# Urtean Zeharreko XXV. astelehena
## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Jainkoaren herriko diran guztiak igon begie Judako Jerusalemera,*
*eta eraiki begioe etxea Jaunari.*

Esdras liburuaren hasiera

*Esd* 1, 1-6

Pertsiako errege Ziroren lehenengo urtean, Jeremias profetaren ahoz Jaunak esana bete zedin, Pertsiako errege Zirori barrutik eragin eutson Jaunak, eta harek agindu hau zabaldu eban, hitzez eta idatziz, bere erreinu osoan:

«Hau dino Pertsiako errege Zirok: "Lurreko erreinu guztiak emon deustaz Jaunak, zeruetako Jainkoak, eta Judako Jerusalemen berari tenplua eraikitzeko agindu deust. Beraz, zuen artean haren herriko diran guztiek izan begie euren Jainkoa lagun eta igon begie Judako Jerusalemera, eta eraiki begioe etxea Jerusalemen dagoan Jainkoari, Israelen Jainko Jaunari. Bizirik gelditutako israeldarrei lagundu begie bizi diran inguruko jenteak: emon begiez zidarra, urrea, ondasunak, abereak eta nork

bere borondatezko opariak, Jerusalemen dagoan Jainkoaren tenplurako"».

Orduan, urteteko prestatu ziran Judaren eta Benjaminen familietako buruak, abadeak eta lebitarrak, hau da, Jerusalemen dagoan Jaunaren tenplua eraikitzera joateko Jainkoak barrutik eragin eutsen guztiak. Auzokoek eskuzabal lagundu eutsien, eta zidar eta urrezko ontziak, ondasunak, abereak eta bitxi ederrak emon eutsiezan, nork bere borondatez eskeinitakoaz gainera.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 126 [125], 1-2b. 2c-3. 4-5. 6 (R/. ik. 3a)

R/. **Gurekin handikiro jokatu dau Jaunak.**

V/. Jaunak Sionen zoria aldatu ebanean,
amesetan lez gengozan.
Barrez bete jakun orduan ahoa,
poz-oihuz mihina. R/.

V/. Jentil-herrietan be esan eben:
«Handikiro jokatu dau Jaunak hareen alde».
Handikiro jokatu dau Jaunak gure alde,

eta pozarren gagoz! R/.
V/. Aldatu, Jauna, gure zoria,
euri-jasek basamortua lez.
Malkoz erein ebenek
pozez batzen dabe. R/.
V/. Negarrez joan ziran,
hazi-zorroa eroanez;
poz-oihuka datoz,
gari-txolak ekarriz. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Gorroto deutso Jaunak maltzurrari.*

Esaera Zaharrak liburutik

*Es* 3, 27-34

Ene seme, ez ukatu mesederik behar dauanari,
zure esku badago egitea.
Lagunak behar dauana badozu, ez esan berari:
«Zoaz eta bihurtu, bihar emongo deutsut».
Ez pentsatu txarto egiterik zugaz nasai bizi dan lagunari.
Ez hasi inogaz auzitan arrazoirik barik,
berak ez badeutsu ezelako kalterik egin.
Ez zaitez indar zalearen inbidiaz bizi,

ezta hartu be haren biderik.
Gorroto deutso Jaunak maltzurrari,
baina bere konfiantza emoten zuzenari.
Gaiztoaren etxea dau Jaunak madarikatzen
eta zintzoaren egoitza bedeinkatzen;
harroputzei burla deutse egiten, eta apalei babesa emoten.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 15 [14], 2-3a. 3b-4b. 5 (R/. ik. 1b)

R/. **Zintzoa zure mendi santuan biziko da, Jauna.**

V/. Akatsik barik eta zuzen jokatzen dauana;
bihotzean egiazale izan
eta mihinaz inor loitzen ez dauana. R/.

V/. Hurkoari gatxik egiten ez deutsona,
auzokoa iraintzen ez dauana.
Jaunak baztertua gitxiesten dauana
eta jainkozaleak ohoratzen dituana. R/.

V/. Dirua lukurreriaz mailegatzen ez dauana
ezta errubakoaren kaltetan eskupekorik hartzen be.
Holan jokatzen dauana
ez da sekula kili-kolo egongo. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 5, 16

R/. **Aleluia.**

V/. Zuen argiak danen aurrean egin behar dau argi,
zuen egintza onak ikusiz,
zeruko zuen Aita goratu dagien. R/.

### EBANJELIOA

*Argimutilaren gainean ipintzen dau argia,*
*sartzen diranek argia ikusi dagien.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 8, 16-18

Aldi haretan, Jesusek esan eutson jenteari: «Inork ez dau argia biztuten eta ontzipean gordetzen edota ohepean ipintzen, ezpada ze, argimutilaren gainean ipintzen dau, sartzen diranek argia ikusi dagien. Izan be, ez dago ezer gordeta agertuko ez danik, ezta ezkutuan be jakingo eta argiratuko ez danik.

Begiratu, beraz, zelan entzuten dozuen! Izan be, daukanari emon egingo jako; ez daukanari, ostera, badaukala uste dauana be kendu egingo jako».

Jaunak esana.

______________________________2

# Urtean Zeharreko XXV. martitzena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Amaitu eben Jainkoaren etxea eraikitzea,*
*eta Pazkoa ospatu eben.*

Esdras liburutik

*Esd* 6, 7-8. 12b. 14-20

Egun hareetan, Pertsiako errege Dariok hau idatzi eutsen Eufrates ibaiaren sartaldeko agintariei:

«Itzi judeguen gobernariari eta herri-arduradunei Jaunaren etxeko lanak egiten; eraiki dagiela Jainkoaren etxea lehengo leku berean. Hona zelan jokatu behar dozuen Jainkoaren etxea eraikitzen diharduen herri-arduradunekin: gizon horreen gastuak Eufrates ibaiaren sartaldeko eskualdean batutako erregearen zerga-dirutik ordainduko dira, zehatz-mehatz eta eten barik. Neuk, Dariok, emoten dot agindu hau. Bete bedi zehatz-mehatz».

Judeguen arduradunek ondo eroan ebezan aurrera eraikitze-lanak, Ageo profetaren eta Idoren seme Zakariasen profeziaren arabera; eta eraiki eben

azkenean etxea, Israelen Jainkoak eta Ziro, Dario eta Artaxerxes Pertsiako erregeek agindu eben lez. Adar hilaren hogeta hiruan amaitu eben etxea, Darioren erregealdiko seigarren urtean.

Israeldarrek, abadeek, lebitarrek eta erbestetik etorritako beste guztiek pozik ospatu eben Jainkoaren etxearen sagarapen-jaia. Jaietan ehun zezen eskeini ebezan, berrehun ahari eta laurehun bildots; baita hamabi aker be, Israelgo leinu bakotxeko bat, Israel osoaren pekatuen parkamen-oparitzat. Gero, abadeak euren mailetan eta lebitarrak euren taldeetan ezarri ebezan Jainkoaren zerbitzurako Jerusalemen, Moisesen liburuan idatzita dagoan lez.

Erbestetik etorriek lehenengo hilaren hamalauan ospatu eben Pazkoa. Lebitarrek egin eben garbikuntza guztiek batera; beraz, garbi egozan danak; holan, erbestetik etorritako guztientzat, euren senide abadeentzat eta eurentzat, hil ahal izan ebezan pazko-bildotsak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 122 [121], 1-2. 3. 4-5 (R/. ik. 1b)

R/. **Goazen pozik Jaunaren etxera!**
V/. Hau bai poza nirea, esan eustenean:
«Goazen Jaunaren etxera!» .
Hona orain nire oinak
zure ateetan, Jerusalem. R/.
V/. Jerusalem, uri lez ondo eraikia,
beragan sendo batua! R/.
V/. Hara igoten dabe leinuek, Jaunaren leinuek,
Israelen lege danez, Jaunaren izena gorestera.
Han dagoz ezarriak auzi-mahaiak,
Daviden jauregiko mahaiak. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Esaera batzuk.*

Esaera Zaharrak liburutik

*Es* 21, 1-6. 10-13

Erregearen bihotza ubidea da Jaunaren eskuetan:
nahi dauan alderantz zuzentzen dau.
Gizakiak zuzen deritxe haren jokabide guztiei,
baina Jaunak ditu kontzientziak aztertzen.
Nahiago dau Jaunak gizakiak justiziaz eta zuzenbidez jokatzea,

sakrifizioak eskeintzea baino.
Begirada harroa, gogo handinahia,
gaiztoen argia: dana da pekatu.

Saiatuaren egitasmoak irabazia,
zalapartaka dabilenarenak beti pobrezia.
Guzurrez altxorrak eskuratzea
heriotzara daroan amets alperrekoa da.
Gaiztoak txarra dau gogo biziz deseatzen,
Harroputza zigortzean, zuhur bihurtzen da heldubakoa,
eta, zuhurrari dagokion heziketaz, lortzen dau jakintza.

Jainko zuzena begira dago gaiztoaren etxekoei:
hondamenera botatzen ditu gaiztoak.
Behartsuaren oihuari belarriak ixten deutsozanari
ez deutsoe entzungo berari be, deadar egitean.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 1 eta 27. 30 eta 34. 35 eta 44 (R/. 35a)

R/. **Gidatu nagizu, Jauna, zeure aginduen bidetik.**
V/. Zorionekoak jokabide akats bakoa dabenak,
Jaunaren lege-bidean dabiltzanak.
Ulertarazo niri zeure legeen bidea,
eta hausnartuko ditut zure egintza harrigarriak. R/.
V/. Leialtasun-bidea dot aukeratu,
aurrean ditut zure erabagiak.
Emoidazu ulermena, eta beteko dot zure legea,
bihotz-bihotzez dot gordeko. R/.
V/. Gidatu nagizu zeure aginduen bidetik,
horixe dot-eta atsegin.
Eten barik nahi dot gorde zure legea,
betiren beti. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Lk* 11, 28

R/. **Aleluia.**
V/. Zorionekoak Jainkoaren hitza entzun
eta betetzen dabenak. R/.

## EBANJELIOA

*Honeek ditut Nik ama eta anai-arreba:*
*Jainkoaren hitza entzun eta betetzen dabenak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 8, 19-21

Aldi haretan, ama eta anai-arrebak joan jakozan Jesusi, baina jentearen jenteaz ezin heldu ziran beragana. Eta jakin eragin eutsoen Jesusi: «Hor dituzu kanpoan ama eta neba-arrebak, Zeu ikusi nahian».

Jesusek erantzun eutsen: «Honeek ditut Nik ama eta anaia-arreba: Jainkoaren berbea entzun eta betetzen dabenak».

Jaunak esana.

______________________________________3

# Urtean Zeharreko XXV. eguaztena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Geure Jainkoak ez gaitu eskutik itzi geure esklabotzan.*

Esdras liburutik

*Esd* 9, 5-9

Nik, Esdrasek, arratsaldeko opari-orduan urten neban neure nahigabe-alditik; soinekoa eta soingainekoa urratuta nebazala, belauniko jarri eta Jaunagana, neure Jainkoagana, jaso nituan eskuak, eta esan neutsan:

«Ene Jainko, lotsa gorrian nago begiak Zugana jasotzeko; geure gaiztakeriek buruz gain egin deuskue eta gure pekatuak zerurainokoak dira. Gure gurasoen egunetatik gaur arte handia izan da gure errua; geure gaiztakeriakaitik, atzerriko erregeen esku jausi gara gu eta gure erregeak eta gure abadeak, eta ezpata eta katigutza, harrapaketa eta lotsa gorria jasan behar izan dogu, eta horixe da gaurko gure egoerea.

Baina orain, bat-batean, mesede egin deusku Jaunak, geure Jainkoak: bizirik gorde dau herriaren zati bat eta bere toki santuan bizitzen itzi deusku; geure Jainkoak begiak argitu deuskuz eta arnasa emon deusku geure esklabotzan. Esklabo gara-eta; baina gure Jainkoak ez gaitu eskutik itzi geure esklabotzan. Pertsiako erregeen onginahia geuganatu deusku eta indarbarritu egin gaitu, geure Jainkoaren etxea eraiki eta haren horma jausiak jasotzeko, eta babesa emon deusku Judan eta Jerusalemen».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Tb* 13, 2. 3-4a. 4bcd. 5. 8 (R/. 2a)

R/. **Bedeinkatua, beti bizi dan Jainkoa!**

V/. Berak dau zigortzen eta bera da errukitzen,
berak dau jatsiarazoten Herio-leza sakonera,
eta berak igonarazoten Hondamendi handitik;
ezerk ez dau ihes egiten haren eskutik.
R/.

V/. Emon ospe Jaunari, israeldarrok, nazinoen aurrean,
harek sakabanatu zaitue-eta hareen artean,
han erakutsi deutsue bere handitasuna.
R/.

V/. Goratu egizue bizidun guztien aurrean,
ha da-eta gure Jaun eta Jainko,
bera gure Aita gizaldien gizaldietan. R/.

V/. Zigortu egin zaitue zeuen bidebakokeriakaitik,
baina errukiz hartuko zaitue guztiok
eta batuko, sakabanatu zaituen nazino guztietatik. R/.

V/. Bihurtu zaiteze, pekatariok,
egin haren aurrean zuzen dana!
Nork daki ez ete zaituen maite izango,

ez ete dan zuetaz errukituko. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Ez nagizu egin ez txiro, ez aberats;*
*emon bakarrik bizitzeko behar dodana.*

Esaera Zaharrak liburutik

*Es* 30, 5-9

Ondo egiaztatuak dira Jainkoaren berba guztiak;
babesten ditu beragana jotzen dabenak.
Ez gehitu ezer haren hitzei,
agiraka egin eta guzurtitzat itzi ez zagizan.

Gauza bi eskatu deutsudaz, ene Jainko,
ez niri ukatu bizi nazan artean:
urrundu nigandik faltsukeria eta guzurra;
ez nagizu egin ez txiro, ez aberats;
emon bakarrik bizitzeko behar dodana,
izan be, asebeterik, baleiteke Zu ukatu
eta esatea: «Nor da Jauna?»,
edo, beharrizanean aurkituz, lapurretari emon
eta nire Jainko horren izena iraintzea.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 29 eta 72. 89 eta 101. 104 eta 163 (R/. 105a)

R/. **Kriseilu da zure hitza, Jauna, nire oinentzako.**

V/. Aldendu nigandik jokabide faltsua
eta emoidazu zeure legea dohaitzat.
Zein ona niretzat zure ahoko legea,
urre-zidarrezko milaka txanpon baino hobea. R/.

V/. Betikoa da zure berbea, Jauna,
zerua baino iraunkorragoa.
Bide txar guztitik aldentzen ditut oinak,
zure berbea gordetzearren. R/.

V/. Zure legeek zuhur egiten nabe;
horregaitik, gorroto ditut jokabide maltzur guztiak.
Higuin dot eta gorroto maltzurkeria,
baina maite dot zure nahia. R/.

### I. eta II. urteetan

## Aleluia

*Mk* 1, 15

R/. **Aleluia.**

V/. Hurrean da Jainkoaren erregetza, dino Jaunak;
bihotz-barritu zaiteze eta sinistu Barri Ona. R/.

## EBANJELIOA

*Jainkoaren erreinua iragartzera eta gaixoak osatzera bialdu ebazan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 1-6

Aldi haretan, Jesusek, Hamabiak beragana baturik, deabru guztiak botatzeko ahalmena eta gatxak osatzeko indarra emon eutsen. Eta Jainkoaren erreinua iragartzera eta gaixoak osatzera bialdu zituan, esanez: «Ez hartu ezer biderako, ez makilarik, ez zakutorik, ez ogirik, ez dirurik, ezta aldatzeko soinekorik be. Etxe baten sartzen zarienean, gelditu bertan herri haretatik urten arte. Eta onartzen ez bazaituee, herri haretatik urtetean, astindu zeuen oinetako hautsa, hareen kontrako seinaletzat».

Urten eben, bada, eta herriz herri joan ziran, Barri Ona iragarriz eta alde guztietan gaixoak osatuz.

Jaunak esana.

4

**Urtean Zeharreko XXV. eguena**

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ekin tenplua eraikitzeari;*
*atsegin izango dot Nik hori.*

Ageoren Profezia liburuaren hasiera

*Ag* 1, 1-8

Darioren erregealdiko bigarren urtean, seigarren hilaren lehenengo egunean, Ageo profetaren bitartez berba egin eutsen Jaunak Xealtielen seme Zorobabel Judako gobernariari eta Jotzadaken seme Josue abade nagusiari, eta esan eutsen: «Hau dino Jaun ahalguztidunak: "Jaunaren etxea barriro eraikitzeko sasoia oraindino ez dala heldu, dino herri honek"».

Honan berba egin eban, ba, Jaunak Ageo profetaren bidez: «Eta sasoia ete da zuek etxe dotoreetan bizitzeko, tenplua jausita dagoan bitartean? Hau dino, beraz, Jaun ahalguztidunak: "Egizue gogoeta zeuen egoeraz. Asko ereiten dozue eta gitxi jasotzen. Jaten dozue, baina betetzen ez; edaten dozue, baina asetzen ez; janzten zarie, baina berotzen ez; poltsa zulatuan jausten jatzuez lanaren irabaziak".

Beraz, hau dino Jaun ahalguztidunak:

"Egizue gogoeta zeuen egoeraz. Igon mendira, ekarri egurra eta ekin tenplua eraikitzeari. Atsegin izango dot Nik hori eta neure aintza agertuko dot han". Halan dino Jaunak».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 149, 1-2. 3-4. 5-6a eta 9a (R/. 4a)

R/. **Maite dau Jaunak bere herria.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Kanta Jaunari kantu barria,
kanta haren gorespena fededunen batzarrean.
Poztu bedi Israel bere Egileaz,
alaitu siondarrak euren Erregeaz. R/.

V/. Goratu begie haren izena dantza eginez,
jo begie harentzat danbolina eta zitara.
Maite dau-eta Jaunak bere herria,
garaipenez jantziko ditu umilak. R/.

V/. Alaitu beitez fededunak Jainko ospetsuaz,
egin begie pozez oihu euren etzunlekuetan.
Bego Jainkoaren gorapena hareen eztarrian,
ohorea da haren fededun guztientzat.

R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ezer ez barririk eguzkipean.*

Kohelet liburutik

*Koh* 1, 2-11

Huskeria hutsa –dino Koheletek–,
huskeria hutsa, dana da huskeria.

Zer irabazi ataratzen dau gizakiak,
eguzkipean hartzen dituan neke-lan guztietatik?
Belaunaldiak joan, belaunaldiak etorri, munduak mundu dirau.
Sortzen da eguzkia eta sartzen,
eta bere tokira bihurtzen da, handik barriro urteteko.
Jotzen dau haizeak hegoalderantz, egiten dau jira iparralderantz;
batera jo, bestera jo, eta jira-biraka hasten da barriro.

Ibai guztiak itsasora doaz, eta itsasoak ez dau gainez egiten;
ibaiak, nora doazen,
harantz dira behin eta barriro joaten, bide bera eginez.
Ezin inork nahiko esan zein aspergarri

dan guztia.
Ez da begia ikustez aspertzen, ez belarria entzutez asetzen.
Lehen izan zana izango da barriro,
lehen egina egingo da gero be.

Ezer ez barririk eguzkipean.
Zeozerez esan baledi «Horra, hori bai barria!»,
hori be jazotakoa da gure aurreko gizaldietan.
Ez gara gogoratzen antxinakoez;
halantxe gerokoez be, ez dira gogoratuko geroago izango diranak.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 90 [89], 3-4. 5-6. 12-13. 14 eta 17 (R/. ik. 1)

R/. **Jauna, gure ihesleku Zeu izan zara gizalditik gizaldira.**

V/. Gizakia hautsera bihurtuarazoten dozu,
esanez: «Bihurtu lehenera, gizakiok».
Bai, mila urte zure begietan
atzo igaro zan eguna adina,
gaualdi bat adina. R/.

V/. Hor daroazuz gizakiak,
ametsa lez dira;
ernetzen dira goizean bedarra lez;

goizean erne eta loratzen da-eta,
arratsaldean zimeldu eta igartzen. R/.

V/. Irakatsi eiguzu geure egunen kontua eroaten,
zuhurtasunaren muinaz jaubetu gaitezan.
Bihurtu zakiguz, Jauna! Noiz arte?
Erruki zaitez zeure zerbitzariez. R/.

V/. Asetu gagizuz goizero zeure maitasunaz,
poztu gaitezan eta zoriontsu izan geure egun guztietan.
Betor gugana Jaunaren, gure Jainkoaren, gozotasuna
eta sendotu begi harek gure eskuen lana;
sendotu dagiala, bai, gure lana. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 14, 6

R/. **Aleluia.**

V/. Neu naz bidea, egia eta bizia, dino Jaunak;
ezin da inor Aitagana joan,
nire bidez izan ezik. R/.

### EBANJELIOA

*Joani neuk ebagi neutsan samea.*
*Nor da hau, holakoak entzuten ditut-eta honi buruz?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 7-9

Aldi haretan, jakin eban Herodes agintariak gertatzen zan guztia, eta zer pentsatu ez ekiala egoan. Batzuek Joan Bateatzailea hilen artetik biztu zala inoen; beste batzuek Elias profeta agertu zala; beste honenbestek, barriz, antxinako profetaren bat biztu zala. Herodesek, ostera, holantxe inoan: «Joani neuk ebagi neutsan samea. Nor da, orduan, hau, ze, holakoak entzuten ditut honi buruz?» Eta Jesus ezagutzeko aukera bila ebilen.

Jaunak esana.

________________________________5

## Urtean Zeharreko XXV. barikua

### I. urtean

### I. Irakurgaia

*Denpora gitxi barru*
*Jaunaren etxea aintzaz beteko dot.*

Ageoren Profezia liburutik

*Ag* 1, 15b–2, 9

Darioren erregealdiko bigarren urtean, zazpigarren hilaren hogeta

batean, honan berba egin eban Jaunak Ageo profetaren bidez: «Berba egiezue Xealtielen seme Zorobabel Judako gobernariari eta Jotzadaken seme Josue abade nagusiari eta herriko gainerakoei, eta esan: "Ba ete da oraindino inor zuen artean Jaunaren etxea bere lehengo edertasun handian ikusi ebanik? Eta orain zelan dagoala begitantzen jatzue? Ez dozue ikusten ezereztuta dagoala?" Horregaitik, hau dino Jaunak: "Izan adore, Zorobabel! Izan adore, Jotzadaken seme Josue abade nagusia! Baita zuek be, lurraldean bizi zarien guztiok! Izan adore eta ekin lanari, Ni zeuekin nozue-eta –dino Jaun ahalguztidunak–. Egiptotik urten zenduenean agindu neutsuena eta nire espiritua zeuekin dozuez; ez, bada, bildurrik izan".

Bai, hau dino Jaun ahalguztidunak: "Denpora gitxi barru, dardara eragingo deutset zeru-lurrei eta itsaso-lehorrei; herri guztiei dardara eragingo deutset; eta herri guztietako ondasunak hona etorriko dira, eta Jaunaren etxea aintzaz beteko dot –dino Jaun ahalguztidunak–. Neurea dot zidarra,

neurea urrea –dino Jaun ahalguztidunak–. Handia izango da tenplu barriaren aintza, lehengoarena baino handiagoa –dino Jaun ahalguztidunak–, eta leku honetan emongo dot bakea" –halan dino Jaun ahalguztidunak–».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 43 [42], 1. 2. 3. 4 (R/. ik. 5bc)

R/. **Itxaron Jainkoagan; goratuko dot neure salbatzailea eta Jainkoa.**

V/. Egidazu justizia, Jainko,
defendatu nire auzia jente sinisbakoaren aurka,
libratu nagizu maltzur gaiztoaren eskutik. R/.

V/. Oi Zuk, ene Jainko babesle horrek,
zergaitik baztertu nozu?
Zergaitik ibili behar dot ilun, arerioak zapaldua? R/.

V/. Bialdu zeure argia eta egia, gidatu nagiela,
eta eroan zure mendi santura, zure bizilekura. R/.

V/. Eta helduko naz Jainkoaren altarara,
neure poz betea dodan Jainkoagana.

Zitaraz goratuko zaitut, Jainkoa, ene Jainkoa. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gauza bakotxak bere sasoia dau eguzkipean.*

Kohelet liburutik

*Koh* 3, 1-11

Danak dau bere sasoia,
eta gauza bakotxak bere sasoia dau eguzkipean:
jaiotzeko sasoia eta hiltzeko sasoia,
landatzeko sasoia eta landatua ataratzeko sasoia,
erailtzeko sasoia eta osatzeko sasoia,
hondatzeko sasoia eta eraikitzeko sasoia.
negar egiteko sasoia eta barre egiteko sasoia,
aiene egiteko sasoia eta alai egoteko sasoia,
harriak jaurtitzeko sasoia eta harriak batzeko sasoia,
besarkatzeko sasoia eta banantzeko sasoia,
bilatzeko sasoia eta galtzeko sasoia,
gordetzeko sasoia eta botatzeko sasoia,
urratzeko sasoia eta josteko sasoia,

isiltzeko sasoia eta berba egiteko sasoia,
maitatzeko sasoia eta gorrotatzeko sasoia,
gudurako sasoia eta bakerako sasoia.

Zer irabazi ataratzen dau lanean nekatzen danak? Ikusi dot Jainkoak gizon-emakumeei ezarri deutsen egitekoa, horretan jardun dagien. Gauza guztiak egoki egin ebazan, bakotxa bere sasoian, eta gizakien esku itzi eban mundua, aztertu egien; gizakiak, ostera, ezin ulertu Jainkoak hasieratik amaierara egin dituanak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 144 [143], 1a eta 2abc. 3-4 (R/. 1a)

R/. **Bedeinkatua Jauna, nire harkaitza.**

V/. Bedeinkatua Jauna, nire harkaitza,
nire laguntzailea eta gaztelua,
gotorlekua eta askatzailea,
nire babeskia eta kerizpea. R/.

V/. Jauna, zer da gizakia Zu haretaz arduratzeko,
zer gizasemea Zuk harengan pentsatzeko?

Arnasaldi baten antzeko da gizakia,
ihesi doan kerizpearen antzeko haren egunak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mk* 10, 45

R/. **Aleluia.**
V/. Gizonaren Semea besteen zerbitzari izatera etorri da,
eta bere bizia danen alde ordainsari emotera. R/.

## EBANJELIOA

*Zu, Jainkoaren Mesias zara.*
*Gizonaren Semeak asko sufridu behar dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 18-22

Jesusek otoitzean bakarrik ziharduala, ikasleak hurreratu jakozan, eta Jesusek itaundu eutsen: «Nor nazala dino jenteak?» Hareek erantzun eutsoen: «Batzuek Joan Bateatzailea zarala; beste batzuek Elias; besteek, barriz, antxinako profetaren bat biztu dala». Jesusek, orduan: «Eta zuek, nor nazala dinozue?» Pedrok erantzun eutson: «Jainkoaren Mesias».

Jesusek inori ez esateko agindu eutsen zorrotz. Eta esan eutsen, gainera, ikasleei: «Gizonaren Semeak asko sufridu beharra dauka; zaharrek, abadeburuek eta lege-maisuek gaiztotzat hartuko dabe eta hil, baina hirugarren egunean biztu egingo da».

Jaunak esana.

______________________________________6

# Urtean Zeharreko XXV. zapatua

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Etorriko naz eta zure erdian bizi izango.*

Zakariasen Profezia liburutik

*Za* 2, 5-9. 14-15a

Jaso nebazan begiak eta gizon bat ikusi neban, neurtzeko haria eskuan ebala. Eta itaundu neutsan: «Nora zoaz?» Harek erantzun: «Jerusalem neurtzera, haren luze-zabala zenbat dan jakiteko».

Orduan, nigaz berbetan ziharduan aingerua aurreratu zan, baina beste aingeru bat bidera etorri eta esan eutson: «Zoaz agudo eta esaiozu mutil horri: "Uri edegia izango da Jerusalem, bertan izango dan bizilagun- eta abere-

kopuru handiagaitik"».

Hau dino Jaunak:

«Neu izango naz suzko harresi haren inguruan,
aintzaz beterik agertuko naz haren erdian».

Hau dino Jaunak:

«Poztu zaitez eta alaitu, Sion uri eder hori,
zure erdian bizitzera nator-eta.
Egun haretan, herri asko alkartuko jakoz Jaunari,
eta neure herri izango ditut;
zure erdian biziko naz».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Jr* 31, 10. 11-12b. 13 (R/. ik. 10d)

R/. **Zainduko gaitu Jaunak,**
**artzainak artaldea lez.**

V/. Entzun, herriok, Jaunaren hitza,
iragarri urruneko kostaldeetan:
«Israel sakabanatu ebanak berak batzen dau

eta artzainak artaldea lez zaintzen». R/.
V/. Jaunak Jakob herria askatu dau,
indartsuagoaren eskutik libratu.
Poz-oihuka etorriko dira Sion mendira,
Jaunaren ondasunetara helduko dira. R/.
V/. Neskek pozik egingo dabe dantzan
mutil eta agureekin batera.
Hareen dolua alaitasun bihurtuko dot,
atsekabearen ondoren, kontsolatu eta alaituko ditut. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gogoratu zeure Egileaz gazte zaran bitartean, hautsa lurrera eta arnasa Jainkoagana bihurtu baino lehen.*

Kohelet liburutik

*Koh* 11, 9–12, 8

Alaitu zaitez, mutil, gazte zaran bitartean,
izan zoriontsu zeure gaztaroan,
jarraitu egiozu zeure bihotzari eta zeure begien grinari.
Baina jakin, horreen guztien kontua
eskatuko deutsula Jainkoak auzian.
Kendu zeure bihotzetik kezkak, uxatu gatxa zeure gorputzetik,
gaztetasuna eta gaztaroa agudo joaten

dira-eta.

Gogoratu zeure Egileaz gazte zaran bitartean,
aldi txarrak etorri baino lehen,
urte horreek etortzean «ez ditut atsegin» esango dozu-eta.
Orduan, eguzkia eta egun-argia, iretargia eta izarrak
ilundu egingo jatzuz,
eta euria egin ondoren barriro lainotuko dau.
Orduan eskuak dardarka jatzuz jarriko
eta hankak ahulduko;
hortz-haginak gitxituko, eta alperrik dozuz izango,
begiak be ilunpetan geldituko.
Belarriak itxiko jatzuz,
ezin izango dozu aditu errotarri-hotsik,
ezta entzun be txorien kanturik.
Ahotsa moteldu egingo jatzu.
Toki goietan ibiltzeak bildurra emongo deutsu,
baita bide zelaian ibiltzeak be.
Ulea zurituko jatzu, ibilera baldartuko
eta atsegin-grina hoztuko.
Izan be, gizakia bere betiko etxerantz doa

eta kalez kale dabiltz hiletariak.

Orduan, zidarrezko haria eten egingo jatzu,
urrezko ontzia hausiko, pitxerra iturrian apurtuko
eta putzu gainean txirringa printzatuko.
Hautsa lurrera bihurtuko da, handik sortua da-eta,
eta bizi-arnasa Jainkoagana bihurtuko, berak emona da-eta.

Huskeria hutsa –dino Koheletek–,
dana da huskeria.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 90 [89], 3-4. 5-6. 12-13. 14 eta 17 (R/. ik. 1)

R/. **Jauna, gure ihesleku Zeu izan zara gizalditik gizaldira.**

V/. Gizakia hautsera bihurtuarazoten dozu,
esanez: «Bihurtu lehenera, gizakiok».
Bai, mila urte zure begietan
atzo igaro zan eguna adina,
gaualdi bat adina. R/.

V/. Hor daroazuz gizakiak,
ametsa lez dira;
ernetzen dira goizean bedarra lez;

goizean erne eta loratzen da-eta,
arratsaldean zimeldu eta igartzen. R/.
V/. Irakatsi egiguzu geure egunen kontua eroaten,
zuhurtasunaren muinaz jaubetu gaitezan.
Bihurtu zakiguz, Jauna! Noiz arte?
Erruki zakiez zeure zerbitzariei. R/.
V/. Asetu gagizuz goizero zeure maitasunaz,
poztu gaitezan eta zoriontsu izan geure egun guztietan.
Betor gugana Jaunaren, gure Jainkoaren, gozotasuna
eta sendotu begi harek gure eskuen lana;
sendotu dagiala, bai, gure lana. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *2 Tm* 1, 10

R/. **Aleluia.**
V/. Kristo Jesus gure salbatzaileak heriotza ezereztu dau
eta bizia argitu Barri Onaren bidez. R/.

### EBANJELIOA

*Gizonaren Semea gizakien esku itziko dabe.*

*Itauntzeak bildurra emoten eutsen.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 43b-45

Aldi haretan, Jesusek egiten zituanakaitik zurtz eginda egozan guztiak. Berak esan eutsen ikasleei: «Hartu ondo gogoan berbok: “Gizonaren Semea gizakien esku itziko dabe”». Hareek, ostera, ez eben ulertzen zertan ebilken; ilun gertatzen jaken, eta ez ziran esanahiaz jaubetzen; itauntzeak, barriz, bildurra emoten eutsen.

Jaunak esana.